# Urtean Zeharreko XXX. astelehena
## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Seme-alaba egiten zaituen Espiritua hartu dozue, eta Espirituaren bidez «Abba!», hau da, «Aita!» deitzen deutsazue Jainkoari.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 8, 12-17

Senideok: Zorretan gagoz, baina ez grina txarrekin, horreen arabera bizitzeko. Holan bizitzen bazarie, hil egingo zarie; baina Espirituaren bidez giza egintza txarrei uko egiten badeutsazue, biziko zarie.

Jainkoaren Espirituak gidatzen dituanak, horreetxek dira Jainkoaren seme-alaba. Zuek ez dozue hartu esklabo egiten zaituen espiritua, barriro be bildurrez bizitzera eroango zaituena; zuek seme-alaba egiten zaituen Espiritua hartu dozue, eta Espirituaren bidez «Abba!», hau da, «Aita!», deitzen deutsagu Jainkoari.

Espiritu honek berak gure espirituagaz bat egiten dau Jainkoaren seme-alaba garala autortzeko; eta, seme-alaba bagara, baita oinordeko be, Jainkoaren oinordeko eta Kristoren

oinordekide; izan be, nekeetan Kristoren kideko bagara, aintzan be haren kideko izango gara-eta.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 68 [67], 2 eta 4. 6-7b. 20-21 (R/. 21a)

R/. **Gure Jainkoa Jainko salbatzailea.**

V/. Jagitzen da Jainkoa, sakabanatzen dira arerioak,
ihesi doaz haren aurretik gorroto deutsoenak.
Zintzoak, barriz, pozten dira,
Jainkoaren aurrean alaitzen,
pozez eta alaitasunez gainezka. R/.

V/. Umezurtzen aita da Jainkoa, alargunen defendatzaile
bere egoitza santutik.
Jainkoak etxea emoten deutse baztertuei,
kantu artean askatasuna presoei. R/.

V/. Bedeinkatua Jauna egunez egun!
Bere gain hartu gaitu geure Jainko salbatzaileak.
Gure Jainkoa Jainko salbatzailea,
Jainko Jaunaren esku dago heriotzatik libratzea. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Bizi zaiteze maitasunean, Kristoren antzera.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik

*Ef* 4, 32–5, 8

Senideok: Izan zaiteze alkarrentzat on eta bihozbera, alkarri parkatuz, Jainkoak zuei Kristoren bitartez parkatu eutsuen lez.

Izan zaiteze, beraz, Jainkoaren antzeko, haren seme-alaba maite zarien ezkero. Bizi zaiteze maitasunean, Kristoren antzera, berak maite izan ginduzalako eta bere burua gure alde emon ebalako, Jainkoak atseginez onartzen dauan oparitzat eskeiniz.

Aitatu be ez egin zuen artean lizunkeria edota ezelako bizio eta grinarik, fededunei dagokienez; ezta gordinkeria, kirtenkeria edota zorakeriarik be, hori guztia ez da-eta itxurazkoa. Zuok ostera, emon eskerrak Jainkoari. Jakizue lizun, zikin eta grinatsu bakar batek be –halakoa sasijainkozalea da-eta– ez dauala Kristoren eta Jainkoaren erreinuko ondarean parterik izango.

Ez zagiezala inork baliobako argudioz liluratu, horrexek erakartzen dau-eta Jainkoaren hasarrea errebeldeen gainera. Ez izan holakoen kide. Izan be, sasoi baten ilunpe zinien; orain, barriz, argi zarie Jaunari esker. Zabiltze, beraz, argiaren seme-alabei dagokienez.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 1, 1-2. 3. 4 eta 6 (R/. ik. Ef 5, 1)

R/. **Izan gaitezan Jainkoaren antzeko, haren seme-alaba maite garan ezkero.**

V/. Zorionekoa gaiztoen aholkuari jarraitzen ez deutsona,
pekatarien bidean ez dabilena,
ezta lotsabakoen batzarrean jesartzen be;
Jaunaren legean atsegin dauana baino,
haren legea gau eta egun hausnartzen dauana. R/.

V/. Ur-ertzean landatutako zuhaitzaren antzekoa da:
emoten dau bere sasoian frutua,
eta ez jako orririk igartzen;
egiten dauan guztiak ondo deutso urteten. R/.

V/. Ez holan gaiztoak, ez holan,
haizeak daroan galautsaren antzekoak dira.
Jaunak zaintzen dau zintzoen bidea;
gaiztoena, barriz, galdu egiten da. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Jn* 17, 17b. a

R/. **Aleluia.**
V/. Zure hitza da egia, Jauna;
sagaratu gagizuz egiaren bidez. R/.

## EBANJELIOA

*Abrahamen ondorengo dan honi*
*ez ete jakon zapatuz lokarri hori askatu behar?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 13, 10-17

Aldi haretan, zapatuz sinagoga baten irakasten ebilen Jesus. Bazan bertan emakume bat, hamazortzi urte hareetan espiritu baten menpe gaixo egoana; guztiz konkortuta egoan eta ezin zan ezelan be arteztu.

Ikustean, Jesusek deitu eta esan eutson: «Emakume, libre zara zeure gatxetik». Eskuak ezarri eutsozan, eta bat-batean arteztu eta Jainkoa goratzen

hasi zan.

Sinagogako buruzagiak, Jesusek zapatuan osatu ebalako hasarre, esan eutson jenteari: «Astean sei egun dagoz beharrerako; etorri egun horreetan osatzera, eta ez zapatuan».

Jaunak erantzun eutson: «Itxurazaleok! Zuetariko nork ez dau zapatuz idia nahiz astoa kortatik askatzen eta ura edatera eroaten? Eta Abrahamen ondorengo dan honi, hamazortzi urtez Satanasek lotuta euki dauan honi, ez ete jakon zapatuz lokarri hori askatu behar?»

Berba honeekin, lotsatu-lotsatuta geratu ziran Jesusen arerio guztiak; jentetza, ostera, pozik egoan harek egiten zituan gauza miragarri guztiakaitik.

Jaunak esana.

_______________________________________________2

# Urtean Zeharreko XXX. martitzena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Izadia bera be gogo biziz dago, zain-zain, Jainkoak noiz agertuko bere seme-alaba izatea zer dan.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 8, 18-25

Senideok: Nire eretxian, oraingo neke-lanak ezer gitxi dira gero gugan azalduko dan aintzaren aldean. Izadia bera be gogo biziz dago, zain-zain, Jainkoak noiz agertuko bere seme-alaba izatea zer dan. Izadiak bere benetako helburua galdua izan arren –ez bere gogoz, horretara behartu ebanagaitik baino–, badau itxaropena, esklabotzatik eta hondamenetik askatua izan eta Jainkoaren seme-alaben aintzazko askatasunean parte izateko.

Badakigu, jakin be, izadi osoa erdiminetan aieneka dagoala orain arte. Eta ha ez ezik, gu geu be bai: Espiritua lehen dohai lez hartu dogunok aieneka gagoz geure barruan, Jainkoak noiz askatuko eta bere seme-alaba noiz egingo gaituan zain.

Salbatuak gagoz, bai, baina itxaropenean bakarrik. Eta itxaroten doguna ikusiko bagendu, hori ez litzateke itxaropena izango. Izan be, zelan itxaron ikusten doguna? Baina ikusten ez doguna itxaroten badogu,

iraupenez behar dogu itxaron.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 126 [125], 1-2b. 2c-3. 4-5. 6 (R/. ik. 3a)

R/. **Gugaz handikiro jokatu dau Jaunak.**

V/. Jaunak Sionen zoria aldatu ebanean,
amesetan lez gengozan.
Barrez bete jakun orduan ahoa,
poz-oihuz mihina. R/.

V/. Jentil-herrietan be esan eben:
«Handikiro jokatu dau Jaunak hareen alde».
Handikiro jokatu dau Jaunak gure alde,
eta pozarren gagoz! R/.

V/. Aldatu, Jauna, gure zoria,
euri-jasek basamortua lez.
Negar-anpuluz erein ebenek
pozez batzen dabe. R/.

V/. Negarrez joan ziran,
hazi-zorroa eroanez;
poz-oihuka datoz,
gari-azaoak ekarriz. R/.

## II. urtean

## I. Irakurgaia

*Handia da misterio hau,*
*eta nik Kristori eta Eleizeari loturik ikusten dot.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako

epistolatik

*Ef* 5, 21-33

Senideok: Izan zaiteze alkarren menpeko, Kristori deutsazuen begiruneagaitik. Emazteak izan daitezala euren senarraren menpeko, Jaunaren menpeko lez, senarra emaztearen buru da-eta, Kristo Eleizearen buru dan lez, bere gorputza dauan Eleizearen salbatzaile dala. Eleizea Kristoren menpeko dan lez, izan beitez emazteak danetan senarraren menpeko.

Senarrok, maitatu egizue zeuen emaztea, Kristok Eleizea maitatu eta beraren alde bere burua emon eban lez. Bere burua eskeiniz, sagaratu egin eban Eleizea, Bateoko urez eta hitzaren indarrez garbituz. Holan prestatu eban beretzat Eleiza distiratsua, zikinik eta zimurrik edo holako ezer bakoa, santua eta kutsubakoa.

Era berean, senarrek be euren gorputza lez maitatu behar dabe euren emaztea. Emaztea maite dauanak bere burua maite dau-eta. Ez dau inork bere gorputza gorrotatzen. Jaten emon eta zaindu egiten dau, ostera, Kristok

Eleizeagaz egiten dauan lez. Gu guztiok gorputz horren atal gara.

«Horregaitik, gizasemeak bere aita-amak itziko ditu,
eta bere emazteagaz alkartuko da,
eta biak bat izango dira».

Handia da misterio hau, eta nik Kristori eta Eleizeari loturik ikusten dot. Dana dala, zuetako bakotxak maitatu begi emaztea bere burua lez, eta emazteak izan begio begirune senarrari.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 128 [127], 1-2. 3. 4-5 (R/. 1a)

R/. **Zorionekoa Jaunari begirune deutsona.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsona
eta haren bideetan dabilena!
Zeure lanaren frututik dozu jango,
zoriontsu izango zara eta ondo jatzu joango. R/.

V/. Emaztea mahatsondo emonkorraren antzeko
zure etxe barruan;

seme-alabak olibondo-kimuen antzeko
zure mahai inguruan. R/.

V/. Hara zelan izango dan bedeinkatua
Jaunari begirune deutsona!
Bedeinkatu zagizala Jaunak Siondik,
gozatu zaitezala Jerusalemen zorionaz
zeure bizitzako egun guztietan. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Mt* 11, 25

R/. **Aleluia.**

V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente apalari agertu deutsazulako. R/.

**EBANJELIOA**

*Mostaza-hazia hazten da eta zuhaitz egiten.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 13, 18-21

Aldi haretan, Jesusek esan eutson jenteari: «Zeren antzekoa da Jainkoaren erreinua? Zeren antzekoa dala esango neuke? Gizon batek bere ortuan botatzen dauan mostaza-haziaren antzekoa da: hazten da eta zuhaitz

egiten, eta txoriek haren adarretan egiten dabe habia».

Esan eban gainera: «Zeren antzekoa dala esango neuke Jainkoaren erreinua? Legaminaren antzekoa da: andra batek hiru imina-urunetan nahasten dau, eta ore guztia harrotzen da».

Jaunak esana.

___________________________________________3

# Urtean Zeharreko XXX. eguaztena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Bera maite dabenen onerako*
*bideratzen ditu Jainkoak gauza guztiak.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 8, 26-30

Senideok: Espiritua datorkigu geure makalaldian lagun, guk ez dakigu-eta behar dan lez otoitz egiten; baina Espirituak berak erregutzen dau gure alde, ezin esan ahalako oihuz. Eta bihotzak aztertzen dituan Jainkoak ezagutzen dau zein dan Espirituaren gogoa, Espirituak Jainkoaren asmoen erara erregutzen dau-eta fededunen alde.

Badakigu bera maite dabenen

onerako bideratzen dituala Jainkoak gauza guztiak, bere aurre-erabagiaz deitu dituanen onerako, hain zuzen be.

Aurrez ezagutu ebazanak aukeratu be egin ebazan, bere Semearen irudiko izan eitezan eta, holan, Semea senide askoren artean lehen-seme izan zedin. Aurrez aukeratu ebazanei dei be egin eutsen; deituak, barriz, zuzentzat hartu, eta zuzentzat hartuak aintzaz bete.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 13 [12], 4-5. 6 (R/. 6a)

R/. **Nik zure maitasunean dot, Jauna, konfiantza.**

V/. Begira, erantzun, Jauna, ene Jainko
Argitu nire begiok, ez nagian heriotz-loak hartu,
ez dagian arerioak esan: «Garaitu dot».
Ez bedi arerioa nire hondamendiaz poztu! R/.

V/. Nik zure maitasunean dot konfiantza;
poztu dadila nire bihotza zure garaipenaz;
orduan kantuz ekingo deutsat Jaunari,
egin deustan onagaitik. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Ez gizakiei atsegin izateko bakarrik,*
*Kristoren esklabo lez baino.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik

*Ef* 6, 1-9

Seme-alabok, obedidu zeuen gurasoei, hori da-eta zuzena Jaunarenak diranentzat. «Hartu aintzat aita-amak»; hori da beragaz agintzari bat daroan lehenengo agindua, hau da: «luzaroan bizi eta zoriontsu izan zaitezan lurraldean». Gurasook, ez sumindu zeuen seme-alabak, hezi baino, Jaunari dagokion lez irakatsiz eta zentzunduarazoz.

Esklabook, obedidu mundu honetako nagusiei, begirune osoz eta bihotz apalez, Kristori lez; ez ikusten zaituezanean edo gizakiei atsegingarri izateko bakarrik, Jainkoaren nahia gogoz betetzen daben Kristoren esklabo lez baino. Bete egizue gogo onez zeuen zerbitzua, Jaunarentzat lez eta ez gizakientzat. Badakizue, egindako onaren neurrian sarituko dauala bakotxa Jaunak, esklaboa izan nahiz

librea.

Eta zuek, nagusiok, jokatu egizue bardin esklaboekin, mehatxurik egin barik; hartu kontuan hareen eta zuen nagusia zeruan dagoala, eta harek ez dauala bereizkeriarik egiten.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 10-11. 12-13b. 13c-14 (R/. 13c)

R/. **Fidagarria da Jauna bere berba guztietan.**

V/. Goratu zagiezala, Jauna, zeure sorkari guztiek,
bedeinkatu zeure fededunek;
aitatu begie zure erregetza ospetsua,
berba egin begie zure ahalmenaz. R/.

V/. Gizakiei agertuz zure egite ahaltsuak,
zure erregetza ospetsuaren bikaintasuna.
Zure erregetza betiko erregetza,
Gizaldiz gizaldikoa zure nagusitza. R/.

V/. Fidagarria da Jauna bere berba guztietan,
leiala bere egintza guztietan.
Jaunak eusten deutse jausteko zorian dagozanei,
eta jasotzen ditu lur joak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *2 Ts* 2, 14

R/. **Aleluia.**

V/. Honetarako dei egin deusku Jainkoak Barri Onaren bidez,

Jesu Kristo gure Jaunaren aintza eskuratzeko. R/.

**EBANJELIOA**

*Asko etorriko dira sortaldetik eta sartaldetik,*
*eta Jainkoaren erreinuko mahaian jesarriko dira.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 13, 22-30

Aldi haretan, Jesusek, Jerusalemera bidean joiala, igarotzen zituan herri eta auzoetan irakasten eban.

Batek esan eutson: «Jauna, gitxi ete dira salbatzen diranak?» Jesusek erantzun eutsen: «Ahalegindu zaiteze ate estutik sartzen. Egia esan, askok sartu gura izango dau, baina ezingo da sartu.

Etxeko jaunak jagi eta atea itxi ezkero, kanpoan geldituok ate joka hasiko zarie: "Zabaldu, Jauna!" Baina harek erantzungo deutsue: "Ez dakit

nongoak zarien”.

Zuek, orduan, holan hasiko zaiakoze: “Zeugaz jan eta edan izan dogu, eta Zuk geure plazetan irakatsi izan dozu”. Baina harek erantzungo deutsue: “Ez dakit nongoak zarien. Alde Nigandik, gaizkileok!”

Orduan, negarra eta hagin-karraskada izango da, Abraham, Isaak eta Jakob eta profeta guztiak Jainkoaren erreinuan ikustean, zeuen burua, barriz, kanpora jaurtia. Asko etorriko dira sortaldetik eta sartaldetik, iparretik eta hegotik, eta Jainkoaren erreinuko mahaian jesarriko dira. Begira: orain azkeneko diran batzuk lehenengo izango dira, eta lehenengo diran batzuk azkeneko».

Jaunak esana.

_______________________________________4

# Urtean Zeharreko XXX. eguena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ez gaitu ezerk aldenduko Jainkoak Jesu Kristogan agertu deuskun maitasunetik.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 8, 31b-39

Senideok: Jainkoa gure alde badogu, nor gure aurka? Bere Semea bera heriotzatik libratu ez, ezpada ze, gu guztion alde heriotzara emon ebanak, zelan ez deusku haregaz batera dana doan emongo?

Nork salatuko ditu Jainkoak aukeratutakoak, Jainkoak berak zuzentzat onartu baditu? Nork kondenatuko ditu? Jesu Kristok?, hil zanak?, biztu be egin zanak?, Jainkoaren eskumaldean dagoan eta gure alde otoitzean diharduanak?

Nork aldenduko gaitu Kristok deuskun maitasunetik? Atsekabeak, larriak, erasoaldiak, goseak, jantzirik ezak, arriskuak, ezpatak? Liburu Santuak dinoan lez:

«Zugaitik egunero hilzorian gaukiez,
hiltzeko ardiak lez garabilez».

Horreetan guztietan erraz urteten dogu garaile, maite izan gaituan hari esker. Ziur dakit: ez heriok eta ez bizik, ez aingeruk eta ez goiko beste indarrek, ez oraingok eta ez gerokok, ez ezelako

agintek, ez ortziko eta ez lur azpiko indarrek, ez beste ezelako izakik, ez gaituala aldenduko Jainkoak Jesu Kristo gure Jaunagan agertu deuskun maitasunetik.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 109 [108], 21-22. 26-27. 30-31 (R/. 26b)

R/. **Salbatu nagizu, Jauna, zeure maitasunari dagokionez.**

V/. Zuk, Jainko Jaun horrek,
jokatu egizu nire alde guztiz ona dan zeure izenagaitik,
libratu nagizu zeure maitasunagaitik,
dohakabe nazalako eta behartsu,
eta zauritua dot bihotza barruan. R/.

V/. Jauna, nire Jainko, lagundu egidazu,
salbatu nagizu, zeure maitasunari dagokionez.
Jakin begie zure eskua dala,
Zu Zeu zarala, Jauna, nire alde dagoana. R/.

V/. Aho betean emongo deutsadaz eskerrak Jaunari,
jentetzaren erdian dot goratuko,
behartsuaren ondoan jarri da-eta,
kondenatu nahi ebenen eskutik

salbatzeko. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Hartu egizuez Jainkoaren armak, zailtasun guztiak gaindituriк, sendo iraun dagizuen.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik

*Ef* 6, 10-20

Senideok: Sendotu zagiezala Jaunak bere indar ahaltsuaz. Hartu egizuez Jainkoak emoten deutsuezan armak, deabruaren maltzurkeriei aurre egin ahal izateko. Gure burruka, izan be, ez da hazur-maminezko arerioen aurka, goiko espiritu gaiztoen aurka baino, mundu ilun honetako aginte, ahalmen eta botereen aurka.

Hartu egizuez, beraz, Jainkoaren armak, egun txarrean gogor eutsi eta, zailtasun guztiak gaindituriк, sendo iraun dagizuen. Zutunik, beraz! Lotu garrikotzat egia, jantzi bularrekotzat zuzentasuna eta oinetakotzat bakearen barri ona zabaltzeko ardura. Euki beti babeskitzat sinismena, arerioaren suzko gezi guztiak amatatu ahal izateko. Hartu egizue burukotzat salbazinoa eta

ezpatatzat Espirituaren ezpata, hau da, Jainkoaren hitza, eten barik otoitz eta eskariak eginez Espirituaren indarrez.

Zagoze erne, fededun guztien alde lehiatsu erregutuz; baita nire alde be, Jaunak berba egokia ahoan jarri deidan, Barri Onaren misterioa ausardiaz adierazoteko. Barri On horren bozeramaile naz kate artean; Jainkoak ausardia emon deidala, behar dan lez berba egin dagidan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 144 [143], 1. 2. 9-10 (R/. 1a)

R/. **Bedeinkatua Jauna, nire harkaitza.**

V/. Bedeinkatua Jauna, nire harkaitza,
eskuak gudurako eta ukabilak burrukarako
trebatzen deustazana. R/.

V/. Nire laguntzailea eta gaztelua,
gotorlekua eta askatzailea,
nire babeskia eta kerizpea.
Berak deustaz herriak menpean jartzen. R/.

V/. Kantu barria kantatuko deutsut, oi Jainko,
hamar hariko harpa joko Zuretzat;

Zeuk emon zeuntsen erregeei garaipena,
Zeuk askatu zenduan David, zeure zerbitzaria. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Lk* 19, 38; 2, 14

R/. **Aleluia.**

V/. Bedeinkatua Jaunaren izenean datorren erregea!
Bakea zeruan eta aintza zeru-goienetan! R/.

### EBANJELIOA

*Profetea ezin leiteke Jerusalemdik kanpora hil.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 13, 31-35

Aldi haretan, fariseu batzuk joan jakozan Jesusi eta esan eutsoen: «Zoaz, alde egizu hemendik ze, Herodes Zu hil nahian dabil».

Jesusek erantzun eutsen: «Zoaze eta esan luki horri: “Hara, gaur eta bihar deabruak botatzen eta osatzen jarraitu behar dot, eta hirugarren egunean nire azkena izango da”. Baina gaur, bihar

eta etzi bideari jarraitu behar deutsat ze, profetarik ezin leiteke Jerusalemdik kanpora hil.

Jerusalem, Jerusalem, profetak hiltzen eta Jainkoak zuri bialduak harrikatzen dozuzana! Zenbat bider ez ete dodaz batu gura izan zure semealabak, oiloak bere txitaldia hegopean lez, eta zuek ez dozue gura izan! Hara, bada, hutsik geldituko jatzue etxea! Eta badinotsuet ez nozuela ikusiko, hau esango dozuen eguna heldu arte: “Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena”».

Jaunak esana.

________________________________________5

# Urtean Zeharreko XXX. barikua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Ni neu madarikatua izatea be onartuko neuke, nire odoleko senideen onerako.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 9, 1-5

Senideok: Egia dinot –Kristo dot lekuko–, ez dinot guzurrik; neure kontzientziak be, Espiritu Santuak argituta, halan autortzen deust: handia

da nire nahigabea, etenbakoa nire bihotzeko mina.

Ni neu madarikatua, Kristogandik aldendua, izatea be onartuko neuke, hori nire odoleko senideen onerako balitz. Israelen ondorengoak dira eta Jainkoak seme-alabatzat hartu ebazan; eurek dabez Jainkoaren presentzia aintzatsua, itunak, legea, kultua eta agintzariak; eurenak dira asabak eta, giza jatorriari dagokionez, eurakandik dator Kristo, gauza guztien gainetik dagoan Jainkoa. Bedeinkatua izan bedi gizaldietan. Amen.

Jaunak esana

## Erantzun salmoa

*Sal* 147, 12-13. 14-15. 19-20 (R/. 12a)

R/. **Jerusalem, ospatu egizu Jauna.**

V/. Jerusalem, ospatu egizu Jauna,
Sion, goratu zeure Jainkoa,
zure ateen sarrailak indartu ditualako
eta seme-alabak zure barruan bedeinkatu. R/.

V/. Zure mugetan bakea ezarri dau,
garirik onenaz ase zaitu.
Bialtzen dau lurrera bere mezua,
eta haren hitza bizkor eta arin doa. R/.

V/. Bere hitza iragarri deutso Jakoben herriari,
bere erabagiak eta aginduak Israeli.
Beste herriei ez deutse holakorik egin,
bere erabagirik ez deutse jakinarazo. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Eginbide on hau zuengan hasi dauanak burutuko dau Kristo etorriko dan egunera arte.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolaren hasiera

*Flp* 1, 1-11

Paulok eta Timoteok, Kristo Jesusen zerbitzariok, Filipon bizi zarien kristau-fededun guztioi eta bertako alkarte-zuzendari eta laguntzaileoi: grazia eta bakea zuei Jainko gure Aitagandik eta Jesu Kristo Jaunagandik.

Zuetaz gogoratzen nazan bakotxean, eskerrak emoten deutsadaz Jainkoari. Pozik egiten deutsat beti otoitz zuen guztion alde, lankide izan zaituet-eta ebanjelioa zabaltzeko eginkizunean, lehenengo egunetik orain arte. Ziur nago eginbide on hau zuengan hasi dauanak burutu be burutuko dauala

Kristo Jesus etorriko dan egunera arte.

Bidezkoa begitantzen jat zuen guztionganako dodan sentipen hau, barru-barruan zaroedaz-eta; izan be, partaide zaituet Jainkoagandik hartu dodan dohaian, bai preso nagoan honetan, bai Barri Ona defendatzeko eta sendotzeko aukera dodanean.

Testigu dot Jainkoa, zein maite zaituedan guztiok Kristo Jesusen maitasun bihotzekoaz. Eta hauxe da nire otoitza: zuen maitasuna zabalduz joan dadila jakintzan eta sentiberatasunean gero eta biziago, egokien dana bereizten jakin dagizuen. Holan, garbi eta erru barik helduko zarie Kristo etorriko dan egunera, Kristo Jesusen bitartez dogun zuzentasunaren emoitzez beterik, Jainkoaren aintza eta gorespenerako.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 111 [110], 1-2. 3-4. 5-6 (R/. 2a)

R/. **Jaunak eginak handi dira.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Bihotz-bihotzez emoten deutsadaz eskerrak Jaunari,

zintzoekin batera batzarrean alkarturik.
Jaunak eginak handi dira,
gogoko dabezan guztientzat aztergai. R/.

V/. Ospetsu eta eder haren egintza,
betiko dirau haren salbazino-asmoak.
Bere mirariak gogoangarri egin ditu;
errukiorra da Jauna eta bihozbera. R/.

V/. Begirune deutsoenei janaria emon deutse,
gogoan dau beti bere ituna.
Egintzetan agertu deutso bere indarra herriari,
beste nazinoen lurraldeak emonez berari. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 10, 27

R/. **Aleluia.**

V/. Nire ardiek entzuten dabe nire ahotsa, dino Jaunak;
Nik ezagutzen ditut,
eta hareek jarraitu egiten deuste. R/.

## EBANJELIOA

*Zuetako nork, semea nahiz idia putzura jausten bajako,*
*ez dau behingoan ataratzen, zapatua izan arren?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 14, 1-6

Aldi haretan, zapatu baten, fariseu-buruetako baten etxera joan zan Jesus bazkaltzera, eta fariseuak zelatan egokozan. Ur-mina eukan gizon bat egoan han Jesusen aurrean. Jesusek, orduan, lege-maisu eta fariseuei itaundu eutsen: «Bidezkoa da zapatuz osatzea ala ez?» Hareek isilik gelditu ziran.

Orduan, Jesusek, gaixoa eskutik hartu, osatu eta bialdu egin eban. Gero, hareei esan eutsen: «Zuetariko nork, semea nahiz idia potzura jausten bajako, ez dau behingoan ataratzen, zapatua izan arren?» Ezin izan eutsoen erantzun.

Jaunak esana.

______________________________________6

# Urtean Zeharreko XXX. zapatua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Israeldarrak baztertzetik*
*Jainkoagaz baketzea etorri bajako munduari,*
*zer ete datorke Jainkoak hareek barriro onartzetik?*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei

egindako epistolatik

*Erm* 11, 1-2a. 11-12. 25-29

Senideok: Jainkoak baztertu egin ete dau bere herria? Ezelan be ez! Ni be israeldarra naz, Abrahamen jatorrikoa, Benjaminen leinukoa. Jainkoak ez dau baztertu beretzat aukeratu eban herria.

Beste itaun bat: Gehiago ez zutuntzeko jausi ete da Israel? Ezelan be ez! Hareek jausi ziralako heldu dira jentilak salbazinora, eta hori israeldarren inbidia bizteko jazo da. Beraz, hareen jaustea munduarentzat aberasbide izan bada, eta hareen huts egitea jentilentzat irabazpide, zenbatez aberasgarriago ez ete da izango Israel osoak salbazinoa lortzea?

Senideok, ez zaituet ezjakinean euki nahi Jainkoak honetan guztian dauan asmo ezkutuaz, zeuen jakiteaz harrotu ez zaitezen: Israelgo zati baten itsukeriak jentil-herri guztiak salbazinora heldu arte iraungo dau. Orduan, Israel osoa salbatuko da, Liburu Santuak dinoan lez:

«Siondik etorriko da askatzailea,
eta sinisgogorkeria kenduko dau

Jakoben ondorengoengandik.
Hona hareekin egingo dodan ituna,
pekatuak parkatuko deutsedazanean».

Barri Onari dagokionez, israeldarrak Jainkoaren arerio dira, zuen onerako; baina, Jainkoak egindako aukerari dagokionez, maite-maiteak dira, euren asabak dirala-eta, behin betikoak diralako Jainkoaren dohaiak eta deia.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 94 [93], 12-13a. 14-15. 17-18 (R/. 14a)

R/. **Jaunak ez dau bere herria zapuztuko.**

V/. Zorionekoa, Jauna, Zuk hezten dozuna,
zeure legean eskolatzen dozuna;
atseden emongo deutsazu egun baltzen ondoren. R/.

V/. Jaunak ez dau bere herria baztertuko,
ez bere ondarea bertan behera itziko.
Bihurtuko deutsoe zintzoari eskubidea
eta izango dabe bihotz zuzenekoek etorkizuna. R/.

V/. Jauna lagun ez baneu,
laster nengoke Heriotza-isiltasunean.
Jausteko zorian nagoala uste dodanean,

zure maitasunak eusten deust, Jauna. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Niretzat, bizitzearen arrazoia Kristo da, eta hiltzea irabazpide.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 1, 18b-26

Senideok: Itxurakeriaz nahiz egiaz, Kristo iragartzen dabe danek, eta honek poztu egiten nau; eta gehiago poztuko naz oraindino, ondo dakit-eta, zuen otoitzari esker eta Jesu Kristoren Espirituaren laguntzaz, bizi dodan egoera hau salbagarri izango jatala: itxaropen sutsua dot ez deustala usteak huts egingo, eta ziur nago beti lez orain be, ni bizirik nahiz hilda egon, bere handitasuna agertuko dauala nigan Kristok. Izan be, niretzat, bizitzearen arrazoia Kristo da eta hiltzea irabazpide. Baina bizitzen jarraituz lan onuragarria egin ahal badagit, ez dakit nik zer aukeratu.

Alde bietatik nago estu: batetik, hil egin nahi neuke, Kristogaz izateko;

niretzat hau askoz hobea da-eta; baina, bestetik, nik bizirik jarraitzea beharrezkoago da zuentzat.

Eta honetan ziur nagoala, badakit gelditu egingo nazala eta zuekin guztiokin jarraituko dodala oraindino, zuen sinismenaren aurrerapenerako eta pozerako. Holan, zuek barriro ikustera joatean, Kristo Jesusenak izateaz dozuen harrotasuna gehitu egingo da niri esker.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 42 [41], 2-3. 5 (R/. 3a)

R/. **Jainko biziaren egarri naz.**

V/. Basahuntza gogo biziz uretara lez,
halantxe nire gogoa, nire Jainko, Zugana.
Jainkoaren egarri naz, Jainko biziaren egarri:
noiz helduko ete naz Jainkoaren aurpegia ikustera? R/.

V/. Bihotza urtzen jat barruan, gogora ekarriz
zelan joaten nintzan tenplura, Jainkoaren etxera,
poz-oihuz eta goraka, jai-giroan,

jentetzagaz batera. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 11, 29ab

R/. **Aleluia.**

V/. Hartu egizue nire buztarria, dino Jaunak,
eta ikasi Nigandik,
gozoa eta bihotz-apala naz-eta. R/.

**EBANJELIOA**

*Bere burua goratzen dauana beheratu egingo dau Jainkoak,*
*eta bere burua beheratzen dauana goratu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 14, 1. 7-11

Behin baten, zapatuz, fariseu-buruetako baten etxera joan zan Jesus bazkaltzera, eta fariseuak zelatan egokozan. Konturatu zan Jesus zelan konbidatuek aurrerengo jarlekuak hartzen zituen eta ohar honeek egin eutsezan:

«Ezteguetara konbidatzen zaitueenean, ez jarri mahaiburuan, baleiteke-eta zu baino konbidatu ospetsuagoren bat izatea; halan balitz,

biok konbidatu zaituenak etorri eta esango leuskizu: “Itzi lekua honi”. Orduan, azkeneko lekuan jesarri beharko zeunke lotsatuta.

Alderantziz, konbidatzen zaituenean, jarri azkeneko lekuan, konbidatu zaituanak, datorrenean, esan deizun: “Adiskide, igon gorago!” Holan, oso leku onean geldituko zara mahaikide guztien aurrean.

Izan be, bere burua goratzen dauana beheratu egingo dau Jaunak, eta bere burua beheratzen dauana goratu».

Jaunak esana.